# Astelehen Santua

## I. IRAKURGAIA

*Ez dau oihu egingo,*
*ez dau kaleetan entzunazoko bere ahotsa.*

Isaias Profetaren liburutik

*Is* 42, 1-7

«Hona nire zerbitzaria, Nik eusten deutsadana,
nire aukeratua, atsegin dodana.
Honengan ipini dot neure espiritua;
zuzenbidea ekarriko deutse herriei.
Ez dau oihu egingo, ez ahotsa goratuko,
ez dau kaleetan entzunazoko bere ahotsa.
Kainabera arrakaldua ez dau hausiko,
doi-doi biztua dagoan argi-metxa ez dau amatatuko.
Zuzenbidea ekarriko dau leial;
ez dau atzera egingo, ez da hausiko,
zuzenbidea lurrean ezarri arte;
ugarteak haren irakaspenaren zain dagoz.

Honan berba egiten dau Jainko Jaunak,
zerua egin eta zabaldu ebanak,
lurra finkatu eta landaretza sortu

ebanak,
gizakiei eta lurrean mugitzen diran guztiei
bizi-arnasa emon eutsenak:

Nik, Jaun honek, salbazino-egintzarako dei egin deutsut,
eta eskutik heldu;
Nik eratu zaitut eta izentatu
herriarentzat itun eta nazinoentzat argi izateko,
itsuen begiak zabaldu dagizuzan,
giltzapetuak espetxetik askatu
eta ilunpean bizi diranak kartzelatik atara dagizuzan».

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 27 [26], 1. 2. 3. 13-14 (R/. 1a)

R/. **Jauna dot argi eta salbamen.**

V/. Jauna dot argi eta salbazino,
nork ni bildurtu?
Jauna biziaren babes,
nork ni izutu? R/.

V/. Gaizkileek erasotzen deustenean, ni irensteko,
eurek, nire etsai eta arerioak,
laban egin eta jausten dira. R/.

V/. Gudarosteak inguratzen banau be,
nire bihotzak bildurrik ez;
nire aurka burruka lehertzen bada be,
nire barrua konfiantzaz betea. R/.

V/. Ziur dakit Jaunaren ontasuna gozatuko dodala
bizidunen lurrean.
Itxaron Jaunagan!
Eutsi gogor, izan bihotz!
Itxaron Jaunagan! R/.

Ebanjelio aurreko txatala

V/. Agur, gure Erregea;
Zeu bakarrik, Jauna,
gure hutsegiteen errukia izan dauana.

## EBANJELIOA

*Itziozu bakean;*
*nire hilobiratze-egunerako egin dau hori.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Joanen liburutik

*Jn* 12, 1-11

Pazkoa baino sei egun lehenago, Jesus Betaniara joan zan; han bizi zan Lazaro, Jesusek hilen artetik biztu ebana. Afaria eskeini eutsoen; Martak zerbitzen ziharduan, eta Lazaro Jesusegaz mahaian egozanetariko bat zan. Mariak, nardo garbizko kilo erdi bat usain-gozo, balio handikoa, harturik, oinak igurtzi eutsozan Jesusi, eta bere ulez sikatu. Etxea lurrin-usainez bete zan.

Judas Iskariotek, salduko eban ikasleak, esan eban: «Zergaitik ez da saldu ukendu hori hirurehun denariotan, eta dirua behartsuei emon?»

Hori esan eban, ez behartsuak ardura eutsoelako, lapurra zalako baino, eta, diru-boltsa berak eukanez, hara botatzen ebenetik ostu egiten ebalako. Jesusek esan eutson: «Itziozu bakean; nire hilobiratze-egunerako egin dau hori. Izan be, behartsuak beti dituzue zeuon artean; baina Ni ez nozue beti izango».

Judeguetariko asko, Jesus Betanian egoala jakinik, bertara joan ziran, Jesusegaitik ez eze, baita hilen artetik

biztu eban Lazaro ikusteagaitik be.
Abadeburuek, orduan, Lazaro be hiltzea erabagi eben, ha zala-eta herritar askok eurekandik alde egiten ebelako eta Jesusengan sinisten.

Jaunak esana.

# Martitzen Santua

## I. Irakurgaia

*Nazinoen argitzat ezarriko zaitut,*
*nire salbazinoa lurraren azken mugaraino heldu dadin.*

Isaias Profetaren liburutik

*Is* 49, 1-6

Entzun, ugarteok! Entzun, urruneko herriok!
Jaio aurretik deitu eustan Jaunak,
amaren sabelean nengoala gogoratu zan nitaz.
Ezpata zorrotz bihurtu eustan ahoa,
bere eskupean babestu ninduan;
gezi zorrotz bihurtu ninduan eta gezi-ontzian gorde.
Eta esan eustan:
«Zeu zara nire zerbitzaria, Israel,
zure bidez agertuko dot neure ospea».
Nik, barriz, hau ninoan:
«Alperrik nekatu naz;

alperrik eta hutsean agortu ditut neure indarrak».

Baina Jaunagan egoan nire eskubidea,
Jainkoaren eskuetan nire lansaria.
Orain honan berba egiten dau Jaunak,
amaren sabelean eratu ninduanak haren zerbitzari izateko,
Jakoben leinuak harengana bihurtuazoteko
eta Israel herria batzeko.
Ohorez jantzi nau Jaunak
eta neure Jainkoa izan dot indar.
Jaunak esan deust:
«Ez da nahiko zu nire zerbitzari izatea,
Jakoben leinuak berreraikitzeko
eta Israelen bizirik geldituak bihurtuazoteko.
Nazinoen argitzat ezarriko zaitut,
nire salbazinoa lurraren azken mugaraino heldu dadin».

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 71 [70], 1-2. 3-4a. 5-6b. 15ab eta 17 (R/. ik. 15)

R/. **Nire ahoak iragarriko dau, Jauna,**

**zure salbamena.**

V/. Zugan babesten naz, Jauna,
ez nadila behin be lotsagarri izan.
Libratu nagizu eta atara onik, zuzena zara-eta,
makurtu nigana belarria eta salbatu nagizu. R/.

V/. Izan zakidaz harri babesle,
nora jo izan dagidan beti;
ni salbatzea erabagi dozu,
Zu zaitut-eta neure hatx eta gaztelu.
Ene Jainko, askatu nagizu gaiztoaren eskutik. R/.

V/. Zeu zaitut-eta, Jauna, neure itxaropen,
Zeu, ene Jauna, neure konfiantza gaztetatik.
Zeu izan zaitut euskarri amaren sabeletik,
Zeu neure indar amaren erraietatik. R/.

V/. Nire ahoak egun osoan iragarriko dau
zure salbazino-asmoa eta -egintza.
Ene Jainko, gaztetatik irakatsi deustazu,
eta gaur arte iragarri ditut zure egintza

harrigarriak. R/.

## Ebanjelio aurreko txatala

V/. Agur, gure Erregea, Aitaren esanekoa,
bildots otzana hiltegira lez,
kurutzera eroana.

## EBANJELIOA

*Zuetako batek salduko nau. . .*
*Oilarrak jo baino lehen, hiru aldiz ukatuko nozu.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Joanen liburutik.

*Jn* 13, 21-33. 36-38

Aldi haretan, ikasleekin mahaian jesarrita egoala, larritu egin jakon Jesusi barrua, eta argi adierazo eutsen ikasleei: «Bene-benetan dinotsuet: Zuetariko batek salduko nau». Ikasleak alkarri begira jarri ziran, nortaz inoan asmatu ezinik.

Ikasleetariko bat, Jesusek hain maite ebana, haren ondo-ondoan egoan mahaian. Simon Pedrok keinu egin eutson, nortaz inoan itauntzeko adierazoz. Harek, burua Jesusen bular gainean jarriz, itaundu eutson: «Nor da, Jauna?»

Jesusek erantzun eutson: «Ogi-zati busti hau emongo deutsadana, haxe da». Eta ogi-zatia bustiz, Judasi, Simon Iskarioteren semeari, emon eutson. Eta ogi-zatiagaz batera Satanas sartu jakon barrura.

Orduan, Jesusek esan eutson: «Egin behar dozuna egizu behingoan». Mahaikideetariko inork ez eban ulertu zergaitik esan eutson hori. Judasek diru-boltsaren ardura ebanez, batzuk uste izan eben jairako behar zana erosteko edota behartsuei zeozer emoteko esan eutsola. Judasek ogi-zatia hartu eta behingoan urten eban. Gaua zan.

Urten ebanean, esan eutsen Jesusek: «Oraintxe agertuko da Gizonaren Semearen aintza, eta haren bidez Jainkoarena. Jainkoaren aintza haren bidez agertzen bada, Jainkoak be bere aintzaz beteko dau ha, eta behingoan gainera».

Semetxuok, honezkero ez nago luzarorako zuekin. Nire bila ibiliko zarie, baina judeguei esan neutsen berbera dinotsuet zuoi be: “Ni noan lekura, zuek ezin zarie joan”».

Simon Pedrok itaundu eutson: «Jauna, nora zoaz?» Jesusek erantzun: «Ni noan lekura zuk ezin deustazu jarraitu orain Niri; geroago bai, jarraituko deustazu».

Pedrok esan eutson: «Zergaitik ezin deutsut jarraitu orain? Neure bizia emongo dot Zugaitik». Jesusek erantzun eutson: «Zeure bizia emongo dozula Nigaitik? Bene-benetan dinotsut: Oilarrak jo baino lehen, hiru aldiz ukatuko nozu».

Jaunak esana.

# Eguazten Santua

## I. Irakurgaia

*Ez neutsen aurpegia aldendu irainei.*

Isaias Profetaren liburutik

*Is* 50, 4-9a

Jainko Jaunak berba egiteko trebatu nau,
bihotz-jausiei adore-hitza emoteko.
Goizero deust belarria erneazoten,
ikasle onak lez entzun dagidan.
Jainko Jaunak belarria edegi deust,
eta nik ez deutsat aurka egin, ez atzera jo.

Lepoa eskeini neutsen jotzen ninduenei, matraila, bizarretik tiraka ebilkidazenei.
Ez neutsen aurpegia aldendu irainei eta txistuei.

Jauna dot laguntzaile;
horregaitik, ez naz kikildu;
horregaitik gogortu dot aurpegia, harria lez,
badakit-eta ez nazala lotsagarri geldituko.

Ondoan dot defendatzailea: nork eroan ni auzitara?
Aurkeztu gaitezan alkarregaz!
Nork dau nigaz auzirik? Datorrela!
Hara, Jainko Jauna dot laguntzaile: nork kondenatuko nau?

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 69 [68], 8-10. 21-22. 31 eta 33-34 (R/. 14c eta b)

R/. **Erantzun, ene Jainko, zeure maitasun handiaz,**

**mesede-sasoia dozu.**

V/. Zugaitik jasan ditut irainak,
Zugaitik lotsaz gorrituta dot aurpegia.
Arrotz izan naz neure senideentzat,
ezezagun neure amaren seme-alabentzat.
Zure tenpluaren maiteminak erretzen nau,
eta gainera datorkidaz Zuri egindako irainak. R/.

V/. Bihotza urratu deuste irainek,
eta adore barik nago;
laguntza itxaroten neban, baina alperrik;
kontsolatzaileak, baina ez ditut aurkitu.
Pozoia jarri eusten janarian,
egarri nintzala ozpina emon edaten. R/.

V/. Jainkoaren izena kantuz dot goratuko,
esker onez handietsiko.
Ikusi egizue, apalok, eta poztu,
izan bihotz, Jainkoaren bila zabiltzenok.
Izan be, entzuten deutse Jaunak behartsuei,
ez ditu gitxiesten bere atxilotuak. R/.

## Ebanjelio aurreko txatala

V/. Agur, gure Erregea;
Zeu bakarrik, Jauna,
gure hutsegiteen errukia izan dauana.

Edo:

V/. Agur, gure Erregea, Aitaren esanekoa,
bildots otzana hiltegira lez,
kurutzera eroana.

## EBANJELIOA

*Gizonaren Semea badoa, Liburu Santuek haretaz dinoen lez;*
*baina dohakabea Gizonaren Semea salduko dauana!*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik

*Mt* 26, 14-25

Aldi haretan, Hamabietako batek, Judas Iskariote eritxonak, abadeburuakana joan eta esan eutsen: «Zenbat agintzen deustazue, Jesus zuei eskura emoteagaitik?» Hareek zidarrezko hogeta hamar txanpon agindu eutsoezan. Harrezkero, Jesus hareei eskura emoteko aukeraren bila ebilen Judas.

Legaminik bako Ogien Jaiko

lehenengo egunean, ikasleek Jesusengana hurreratu eta itaundu eutsoen: «Non gura dozu pazko-afarirako prestaketak egitea?» Jesusek erantzun eutsen: «Zoaze urira, urliagana, eta esaiozue: “Maisuak dino hurrean dala beraren ordua, eta zuen etxean ospatu nahi dauala Pazkoa ikasleakaz”». Jesusek agindu bezala egin eben ikasleek, eta pazko-afaria prestatu eben.

Iluntzean, mahaian egoan Jesus hamabi ikasleakaz eta, afaltzen ziharduala, esan eban: «Bene-benetan dinotsuet: Zuetariko batek saldu egingo nau». Ikasleak, oso goibeldurik, itaunka hasi jakozan banaka: «Nik ete, Jauna?»

Harek erantzun: «Neugaz plater beretik jaten diharduan batek salduko nau. Gizonaren Semea badoa, Liburu Santuek haren gainean dinoen moduan; baina zoritxarrekoa Gizonaren Semea salduko dauana! Hobe eukean jaio izan ez balitz».

Orduan, Judasek, salduko ebanak, itaundu eutson: «Neu ete naz, Maisu?» Jesusek erantzun eutson: «Zeuk esan dozu».

Jaunak esana.

# Eguen Santua
## Krisma Meza
## A B C urteetan

### I. IRAKURGAIA

*Jaunak igurtzi nau,*
*behartsuei barri ona emotera bialdu nau,*
*hareen dolu-jantzia jaietako usain gozo bihurtu dadin.*

Isaias Profetaren liburutik

*Is* 61, 1-3a. 6a. 8b-9

Jainko Jaunaren espiritua nire gainean dago,
Jaunak igurtzi nau-eta.
Harek bialdu nau behartsuei barri ona emotera,
bihotz-urratuak osatzera,
katiguei amnistia iragartzera
eta giltzapetuei askatasuna;
Jaunaren onginahi-urtea
eta mendeku-eguna jakinazotera.
Siongo atsekabetuak kontsolatzera
bialdu nau Jaunak:
koroa emongo deutset errautsaren ordez,
jaietako usain gozoa dolu-jantziaren

ordez,
gorespen-kantuak etsipenaren ordez.

Zuei «Jaunaren abade» deituko deutsuee,
«Gure Jainkoaren zerbitzari» esango.
Euren lansaria emongo deutset leial
eta betiko ituna egingo hareekin.
Ospetsu izango dira hareen ondorengoak
nazino eta herrien artean;
ikusiko dabezan guztiek autortuko dabe
Jaunak bedeinkaturiko herria dirala.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 89 [88], 21-22. 25 eta 27 (R/. ik. 2a)

**R/. Jauna, zure maitasuna abestuko dot betiren beti.**

V/. David neure zerbitzaria aurkitu dot
eta neure orio santuaz igurtzi.
Nire eskuak sendo deutso eutsiko,
nire besoak indartsu dau egingo. R/.

V/. Beragaz izango ditu nire leialtasuna eta

maitasuna,
garaile urtengo dau nire izenean.
Harek dei egingo deust: «Zu nire aita,
nire Jainkoa, nire harri salbatzailea». R/.

## II. IRAKURGAIA

*Jainko bere Aitarentzat*
*errege eta abade dan herri egin gaitu.*

Apokalipsia liburutik

*Ap* 1, 5-8

Grazia zuei eta bakea Jesu Kristoren partetik, testigu leiala, hilen arteko lehenengo biztua eta munduko erregeen buruzagia danaren partetik. Maite gaituanari eta bere odolaz geure pekatuetatik askatu gaituanari, Jainko bere Aitarentzat errege eta abade dan herri egin gaituanari, aintza eta agintea gizaldi eta gizaldietan. Amen.

Hara, hodei artean dator!
Danek ikusiko dabe,
baita zulatu ebenek be,
eta lurreko leinu guztiek
hileta-negarra egingo dabe hagaitik.
Bai. Amen.

Hau dino Jainko Jaunak: «Neu naz Alfa eta Omega, badan, bazan eta etortzekoa dan ha, Ahalguztiduna».

Jaunak esana.

## Ebanjelio aurreko txatala

*Is* 61, 1 (ik. *Lk* 4, 18an aipatua)

V/. Jaunaren Espiritua nire gainean dago,
behartsuei Barri Ona emotera bialdu nau.

## EBANJELIOA

*Jaunaren Espiritua nire gainean dago,*
*ze, berak gantzutu nau.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 4, 16-21

Aldi haretan, Jesus Nazaretera, bera hazitako herrira, joan zan, eta zapatuan, sinagogan sartu, ohi ebanez, eta zutunik jarri zan irakurgaia egiteko. Isaias profetaren liburua emon eutsoen eta, edegitzean, pasarte hauxe aurkitu eban:

«Jaunaren Espiritua nire gainean dago,
ze, berak gantzutu nau,

behartsuei Barri Ona emoteko.
Giltzapekoei askatasuna
eta itsuei ikusmena iragartzera bialdu nau,
zapalduei askatasuna emotera,
Jaunaren grazia-urtea iragartzera».

Liburua batu ostean, laguntzaileari emon eta jesarri egin zan. Danak sinagogan begira-begira eukazan.

Jesus holan hasi jaken: «Gaur bete da orain entzun dozuen Liburu Santuko berba hau».

Jaunak esana.